


## SAN FERMINETARA ONGI ETORRIA

Agur lagunak!

Festa giroan murgilduta azken agur borrokalari bat helaraztera gatoz hona, urte honetan kalera irten zareten lagun guztioi!

Urteotan EPPKren partaide izan zarete. Urte gogorrak bezain emankorrak izan dira. Honaino iritsi gara duda izpirik gabe urtetako borroka eta sofrikarioari esker. Zuen ekarpena berebizikoa izan da eta eman duzuena hemen aitortzera gatozkizue. Oso harro gaude zuek bezalako borrokalariak izan ditugulako ondoan.

Kolektiboak eztabaidaren ondorioak plazaratu ditu, egoera politiko berrian eta Ezker Abertzale osoaren estrategia politikoan kokatu du bere burua. Aurrerantzean, urrats eta ekimen berriak emateko prestutasuna adierazi du. Bestalde, gure antolakuntzari dagokionez, Mintzaidetza eta Zuzendaritzaren osaketa ezagutzera eman ditu. Gure eskakizun eta posizioaren berri zuzena izateko, Mintzaidetzaren zereginak errazteko, bitartekariak eskatu ditugu. Bidea egin behar da eta blokeoa urratu egin behar dugu. Espetxe politika aldarazi behar dugu, dispertsioa irabazi, presoak Euskal Herriratu eta kaleratze prozesua abiatu. Baldintza berriak sortzera goaz eta horretarako guztion beharra dugu, barrutik soilik ez da eta nahikoa izango.

Ezker Abertzaleak ibilbidea berritu du eta indar metaketa gauzatzen ari da baldintza politiko berriak astinduz. EPPk-k determinazio osoz gure bultzada luzatu diogu apostu politikoari. Erronka berriak irekiko zaizkigu parez pare eta barrutik eta kanpotik elikatzen jarraituko dugu.

Orain beraz lehenik, bizimodua berritu, familia eta ingurua zaindu eta haiekin gozatu. Aurrera begira herrian, kalean, mugimenduan, militantzia politikoan segitzea animatzen zaituztegu. Esan bezala, guztion beharra baitago, are urtetako eskarmentua duzuenon partetik, aurrean ditugun erronka handietan aportatuz.

Jo Ta Ke irabazi arte! Gora Euskal Herria askatuta! Gora San Fermin!

**EPPK, 2012ko uztailan**